# ULERMENA TEST BIDEZ 7

**1. Anekdota, bere horretan, bitxikeria soil biluzia den aldetik, ez da literaturarako gai.** Hau da:

a) Pasadizoak, bitxikeria guztiak erantzi arte, ez du literaturarako balio.

b) Literaturak anekdota soilak baino kontu funtsezkoagoak behar ditu.

c) Anekdota soilak ez baina bitxikeria mamitsuak dira literaturarako gai.

d) Anekdotak eta bitxikeriak gutxietsita, literaturak gertakizun soilak aintzat hartu ohi ditu.

**2. Atxagaren nobela, ustez haurrentzako liburua, literatura filosofikoaren eremura lerratu dute Alemanian.** Hau da:

a) Hemen haur literaturaren sailean zegoen Atxaga; Alemanian, berriz, filosofoen mailan kokatu dute.

b) Alemanian filosofikotzat jo dute guk haur literaturatzat genuen Atxagaren nobela.

c) Egileak bere nobela haurrei zuzendu ez arren, Alemanian haur literaturatzat hartu dute Atxagaren lana.

d) Hemengo haurrek estimatu duten arren, Atxagaren nobelari literatura filosofikoaren ezaugarriak aitortu dizkiote Alemanian.

**3. Informatika irabazi ezineko erronka da, batez ere adin batetik gorako langileentzat.** Beste era batera esanda:

a) Informatikaren borroka ezin dute galdu halako goi maila duten langileek.

b) Langile zaharrek nekez joko diete erronka informatikak dakartzan irabaziei.

c) Adineko langileentzat ezinezkoa da irabazirik ateratzea informatikaren erabileratik.

d) Adinean sartuta dauden langileentzat batez ere, informatika erabiltzen ikastea oso zaila edo ia ezinezkoa da.

**4. Honek guztiak, talde naziekiko morboarekin batera, ikusmina sortzen du inozo askorengan.** Hau da:

a) Honek eta talde nazien aldeko jarrerak ikusmina eragiten die inozo askori.

b) Honegatik eta talde naziek pizten duten morboagatik ikusmina sentitzen dute inozo askok.

c) Honi buruzko ikusmina dute inozo askok, talde nazietako morboaren ondorioz.

d) Honi eta talde naziek eragiten duten beldurrari bota behar zaio inozo askoren ikusminaren errua.

**5. Norbere gauzarik minenez trufatzen jakiteak abagune paregabea eskaintzen du besteenez trufatzeko.** Bestela esanda:

a) Mintzen gaituztenean besteei iseka egiteko joera dugu.

b) Bere buruari iseka egiten dakienak aukera ederra du besteei iseka egiteko.

c) Minez trufatzen dakiena besteen saminez ere trufatuko da.

d) Min ematen digutenean besteei erasotzeko aukera ederra dugu.

**6. Maisutza bere gain hartu dutenez gero, gidaritza dagokie, ez artaldearen atzetik ibiltzea.** Bestela esanda:

a) Maisuak direnez, artaldearen atzetik ibili behar dute.

b) Maisutza eurek hartu dutenez, eurek izan behar dute gidari.

c) Artaldeari ez dagokio gidaritza, buruzagitza baizik.

d) Gidaritzak gain hartu dienez gero, ez dute artaldearen aurretik ibili behar.

**7. Bereak barik inorenak diren testuak ere ageri dira nobelan, multzo polita gainera.** Hau da:

a) Nobelan tarteka dauden testu batzuk politak dira.

b) Idazleak asmatutako testuak baino ez dira ageri nobelan.

c) Besteren lanen batzuk ere badira nobelan.

d) Berak eta bestelako idazle batzuek hartu dute parte.

**8. Bungeren ustez, nabari da, gizakiak ez dira bereizi behar ez arrazagatik, ez erlijioagatik, ez beste edozergatik.** Hots:

a) Bungeren arabera, zalantzazkoa da gizakiak arrazaren, erlijioaren edo beste zerbaiten arabera baztertu behar ote diren.

b) Bungek aholkatzen du gizakien artean bazterketarik ez egiteko, ez arrazagatik, edo erlijioagatik eta abar.

c) Bungek adierazten du ez arrazak, ez erlijioak, ez beste ezerk ez dituela gizakiak bereizi behar.

d) Baliteke Bungek ez onartzea gizakien arteko inolako bereizketarik.

**9. Hurbilekoa astiro aztertzeko gauza izan ez eta urrutira azkar iristeko amorratzen dagoenari ezer gutxi eska dakioke.** Bestela esanda:

a) Hurbilekoa aztertzeari utzi eta urrutiko gauzetara azkar jo nahi duenak zerbait onik egingo du.

b) Gertukoa lasai aztertu ezin eta urrutira iristeko desiratzen dagoenak nekez egingo du gauza handirik.

c) Urrutira azkar iritsi nahi eta gertukoa sakon aztertzen duenari ezer gutxi eska diezaiokegu.

d) Hurbileko gauzak sakon aztertzen ez dituenari amorrurik ezin eskatu.

**10. Aneren hitzak ez ziren erresumindu batenak, egiari tokia egitearen onuran sinesten zuen batenak baino.** Alegia:

a) Gezurrekin atsekabetuta zegoelako zakarki hitz egin behar izan zuen Anek.

b) Egia esateak abantailak dakartzala sinesten zuelako mintzatu zen Ane hala.

c) Erresumaren hobebeharrez baino areago, egiazale zelako mintzatu zen Ane hala.

d) Egoerarekin zeharo mindurik zegoelako hitz egin zuen Anek era hartan.

**11. Gogoan dut behinola Ghandi elkarrizketatzeko zoria izan nuela.** Beste era batera:

a) Ghandi elkarrizketatzekotan egon nintzen, baina ez nuen lortu.

b) Oso aspalditik izan dut Ghandi elkarrizketatzeko gogoa.

c) Behin Ghandiri elkarrizketa egiteko aukera izan nuen.

d) Ghandiri elkarrizketa egitea zozketan neuri egokitu zitzaidan.

**12. Egoera honek Hiesa errazago antzematea ahalbidetuko du.** Beste era batera:

a) Egoera honek Hiesa errazago hedatzeko bidea emango du.

b) Egoera honek Hiesa hain erraz kutsatzea eragotziko du.

c) Egoera honek Hiesaren aurkako babesa sustatuko du.

d) Egoera honek Hiesa errazago diagnostikatzeko aukera emango du.

